# Geurea Euskal Herria

www.geureaikurriña.org

2010eko Munduko Futbol Txapelketa, 2010eko ekainaren 11 eta uztailaren 11ren artean jokatuko da Hegoafrikan eta beste behin Euskal Herriko selekziorik gabe, ospatuko dute nazioarteko futbol txapelketa garrantzitsu hau.

Euskal Herriak bere burua nazioartean ordezkatzeko eskubidea ukatzen dioten horiek, txapelketan parte hartuko dute. Espainiar eta frantses selekzioak gureak direla sinestarazi nahi digute. *Olatu gorria* deiturikoaren bidez euskal herritarron borondatea eta nazio identitatea ito nahi dituzte.

Hori horrela izanik, deialdi berezia egin nahi diogu euskal jendarteari, **txapelketan zehar etxetako balkoietan Ikurriña zintzilikatu dezan**. Bide beretik, Euskal Herriko selekzioaren aldeko ikur eta kamisetak inoiz baino arrazoi gehiagorekin agertzera deitzen dugu.

Txapelketak dirauen bitartean euskal selekzioaren aldarrikapena sustatuko duten ekimenetan parte hartzera gonbidatzen zaitugu. Kirol erakustaldiak, triki poteoak, ... **Espainiar zein frantses selekzioek jokatzen dutenean, euskal selekzioaren aldarrikapena zabalduko duen ekimenak antolatzera deitzen dugu euskal zalegoa**.

Nazio bat gara, Euskal Herria eta gure burua nazioartean ordezkatzeko eskubidea dugu. Munduko txapelketa honetan ez dugu zer ospaturik eta asko dugu aldarrikatzeko!

## nazio bat, selekzio bat, federazio bat

# Geurea Euskal Herria!

Bai Euskal Herriari
www.baieuskalherriari.org

